# ABENDUALDIKO III. DOMEKA
# "C" urtean

## I. IRAKURGAIA *Jauna pozez saltoka dabil zugaitik.*

Sofoniasen Profezia liburutik *So* 3, 14-18a

Egin poz-irrintzi, Sion uri!
Egin oihu alai, Israel!
Poztu zaitez bihotz-bihotzez,
alaitu, Jerusalem!
Urratu dau Jaunak zure kontrako erabagia,
atzeratuazo ditu zure arerioak.
Jauna, Israelgo erregea, zure erdian dago;
ez zara gehiago ezeren bildur izango.
Egun haretan, honan esango deutsoe Jerusalemi:
«Ez bildur izan, Sion!
Ez beitez jausi zure eskuak!
Jauna, zure Jainkoa, zure erdian dago salbatzaile indartsu!
Pozaren pozez alaitzen da zugaitik,
bere maitasunez bizibarritzen zaitu.
Pozez saltoka dabil zugaitik, jaiegunez lez».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa *Is* 12, 2. 3 eta 4bcd. 5-6 (R/. 6)

R/. **Egin poz-oihu,**
**handikiro dihardu-eta zuen alde Israelgo Santuak**.

V/. Jainkoa dot salbatzaile!
Badot uste on eta ez naz bildur,
Jauna dot-eta indar eta kemen,
bera neure salbazino. R/.

V/. Atarako dozue ura pozik
salbazinoaren iturrietatik.
«Eskerrak Jaunari, dei egin haren izenari,
iragarri haren egintzak herriei,
aldarrikatu zein bikaina dan haren izena. R/.

V/. Kanta Jaunari, bikain jokatu dau-eta,
jakin begie honen barri mundu osoan.
Egin poz-irrintzi eta oihu, Siongo bizilagunok,
handikiro dihardu-eta zuen alde Israelgo Santuak». R/.

## II. IRAKURGAIA *Hurrean da Jauna.*

San Paulo Apostoluak Filipoarrei egindako

epistolatik

*Flp* 4, 4-7

Senideok: Zagoze beti pozik Jaunagan; barriro dinotsuet, zagoze pozik. Ezaguna izan bedi gizaki guztientzat zuen bihotz ona. Hurrean da Jauna. Ez izan ezeren kezkarik, ostera gorabehera guztietan agertu zeuen eskabideak Jainkoari, otoitz eta erregu eginez eta eskerrak emonez. Eta guk pentsatu geinkena baino handiagoa dan Jainkoaren bakeak gordeko ditu zuen gogo-bihotzak Kristo Jesusen bidez.

Jaunak esana.

Aleluia *Is* 61, 1 (ik. Lk 4, 18an aitatua)

R/. **Aleluia**.

V/. Jaunaren Espiritua nire gainean dago,
behartsuei Barri Ona emotera bialdu nau. R/.

**EBANJELIOA** *Eta guk zer egin behar dogu?*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 3, 10-18

Aldi haretan, honan itauntzen eutson jenteak Joan Bateatzaileari: «Zer egin behar dogu?» Harek erantzuten eutsen: «Soineko bi dituanak emon beio bat ez daukanari, eta jatekorik daukanak egin begi gauza bera».

Etorri jakozan zergalari batzuk be bateatzera eta itaundu eutsoen: «Maisu, zer egin behar dogu?» Eta harek esan eutsen: «Ez eskatu erabagita dagoana baino gehiago».

Gudariek be itaundu eutsoen: «Eta guk zer egin behar dogu?» Harek erantzun: «Ez atara inori dirurik gogorkeriaz, ezta guzurrezko salaketaz be; ezpada ze, konformatu zaiteze daukazuen soldatarekin».

Herria zain-zain egoan eta danak ziharduen pentsatzen ez ete zan Joan Bateatzailea Mesias izango. Joanek guztiei jakin eragin eutsen: «Nik urez bateatzen zaituet; baina badator ni baino ahaltsuago dana eta ni ez naz inor haren oinetakoen lokarriak askatzeko be. Harek Espiritu Santuaz eta suz bateatuko zaitue. Eskuan dauka sardea, larraina garbitu eta garia garautegietara batzeko; galtzua, barriz,

amatatu ez leitekean sutan erreko dau».

Honeen eta beste aholku askoren bidez, Barri Ona iragartzen eutson herriari.

Jaunak esana.

**Hitzaldia**

Abendualdiko 3. domeka honetako mezua poztu gaitezala da; eta emoten deuskun arrazoia, Jainkoa hurrean dala.

Pozik gagoz, senideok? Eta gure pozaren iturria Jainkoaren hurtasuna da? Zenbat bider autortu behar dogun *ezetz*: ez gagoz pozik; eta gitxiago da gure pozaren iturria Jainkoaren hurtasuna. Orduan? guzurretan dihardugu, ala badago beste arrazoirik? hauxe azken hau uste dot nik.

Jainkoagazko gure hartu-emonak ez dira (ez deuskue-eta holan irakatsi) konfiantzazkoak, maitatu batek bere maiteagaz daukazan hartu-emonak lez. Jainkoak dana eta danean ikusten dauala, eta txarkeria zigortu egiten dauala eta ez dogula txarkeriarik egin behar… irakatsi deuskue. Eta, zer zan txarkeria? Legea edo Arauak edo Esanak urratzea edo ez

betetea; baina ez Jainkoaren "argitasunetik", irribarretik, ihes egitea, eta hagaitik ilunpetan edo tristuran jaustea.

Eta hauxe da Joan Bateatzaileak zabaltzen eta Jesusek zabalduko dauan mezuen arteko aldea: Bateatzaileak Jainko zigortzailea iragarten dau; haren zigorrari ihes egitea dagokigu; horretarako txarkeriatik aldentzea eta gure bizitzan on eginak ereitea dagokigu. Hortixik harengana hurreratzen ziranen galderak: *guk zer egin behar dogu*?

Jesusek, alderantziz, beste mezu bat zabaltzen dau. Baina inork ez dau onartuko, edo ulertuko, antza; edo ez dau ulertu gura izango, hori ez dalako Jainkoaren irudi *benetakoa*, edo ordura arte ezaguna dana. Jesusek iragarten dauan Jainkoa *erabili* (manipulatu) ezina da: gizaki oro maite dauana; danak dira-eta bere seme-alaba. Zigortu ezin daikena da: maitasuna dalako. Dana parkatzen dauana da: parkamena dalako.

Jainko hau ez dago gugandik urrun, geure artean baino. Horrexegaitik ez dauka inondik etorri beharrik, ez ezer emon beharrik, gu beragan garalako; haren biziak badihardualako gugan. Baina…

Ze zentzun dabe, orduan, gure *zatoz, Jauna*! oihuek? Horen esangurea inondik etorri behar dauala bada, ez dabe ezelango zentzurik. ondo ulertu ezkero, geure burua itxartzeko, Jainkoa geure ondoan sumatzeko eta, Jesusegaz batera, Jainkoagan Aita-Ama aurkitzeko eta haregaz konfiantzazko hartu-emonak eukiteko.

Baina Jainko hori ezin *erabili* geike inork bildurtzeko, ez eta geure burua engainatzeko ere. Eta bai izango dogula poz-iturri maitatuak garala sumatuko dogulako.

Geuretuko ete dogu Jesusek iragarten deuskun Jainkoa, ala, nahiago izanik *erabili* daiteken Jainkoa, lehengotan jarraituko dogu, alperreko deiek eta eskariak egiten?

## ABENDUALDIKO III. DOMEKEA "C"

### Sarrera oharra

Senideok: Abendualdian aurrera goaz, eta Jainkoagandik mezu pozgarria jatorku: seme-alaba aukeratuak gaitu; eta, bera poz-emoile danez, geu ere gure senideentzako

poz-iturri izan gaitezala gura dau.

Kezkaz eta atsekabez bizi gara, behar bada. Beharrezko dogu poza. Zabaldu deioguzan ateak poz-emoile dogun Jainkoari.

**Sarrera abestia**

Zatoz Jauna! Nausi bait da dirua:
jendea maiz dauka zapaldua.
Entzun, Jauna, behartsuen oihua:
*Etor bedi zure erreinua!*

Zatoz, Jauna! Hor gabiltza gauez gau:
piztu gugan fedearen sua.
Zatoz, Jauna! Argi ezazu mundu hau:
*Etor bedi zure erreinua!*

---

**Damu-otoitza** (*Beherago, Abenduko Koroia*)

Poza beste iturri batzutan bilatzeak iluntzen gaitu eta atsekabetzen. Jo daigun Jainkoaren errukira, poz-iturrira:

—Jesus Jauna, Guretzako **Ba**rri On zarana, *erruki, Jauna*.

—Jesus Jauna, Jainkoaren po**za** dakarskuzuna, *Kristo, erruki*.

—Jesus Jauna, poz-emoile e**gi**ten gaituzuna, *erruki, Jauna*.

---

**Abenduko koroia** (egiten ez bada, gorago *damu-otoitza*)

Hirugarren kandela hau bizterakoan, Jauna, poz-emoile izateko gure gogoa biztu daizula eskatzen deutsugu; gure gizarte honek behar dauzan alaitasunaren gaurko autorleak sustatu daizuzala gure artean.

(3. k*andelea bizten dan bitartean, abestu:*)

♩= 100 Abenduko koroioa bedeinkatzean: Is 60,1 *Udaia*'97

Ja - gi zai - tez, Je - ru - sa - lem, ba - da - tor zu - re ar - gi - a;
hor do- zu ar - gi-tzen, su ta gar, Jau- na-ren ain- tza.

En - tzun, e - ne he - rri, zu - re - tza - ko do-dan hi -
E - ten lo - ka - rri - ak, ba - rri txa - rrak al - bo - ra -
tza: as - ka - tu - ko zai - tut, poz - tu - ko deu - tsut bi - ho - tza.
tuz, po - bre - tu guz - ti - ei zu - re bi - ho - tza za - bal - duz.

Itxaropenaren Jainkoak bere Semearen mahai ingurura ekarri gaitu. Egun baten aintzazko mahai ederrean alkartu gaizala, zorionaren betetasunean.

AMEN.

**Lehenengo irakurgaiari** So 3, 14-18a

Atsekabe handietatik urten izanaren

esperientziak atsekabe barriak gainditzeko itxaropena emoten dau. Eta profetek horren barri emon gura deutsoe herriari: Jainkoak bere herriaren poza gura daualako.

**Erantzun salmoa** Is 12, 2. 3 eta 4bcd...




**R/. Goratu egizue irrintzika handi dago-eta Israelgo Santua zure erdian.**

**Bigarren irakurgaiari** Flp 4, 4-7

Gure pozaren iturria Jainkoaren hurtasuna sumatzea dala dinosku Paulok. Baina gure poztasun-iturriak osasuna, kontsumoa eta zalapartea badira… non jausiko ete dira hitzok?

**Ebanjelioari** Lk 3, 10-18

Adi Bateatzailearen mezuari: Mesiasi bidea egiteak gure bizikerea eta jokabideak aldatzea eskatzen dau; erantzun morala baino harago doan aldakuntzea da hau. Egin deiogun harrerea Aleluia abestuz,

zutunik.



## Herri-otoitza

† Izurrite aldi honetan hainbeste dagoz triste, atsekabez, bururik jaso ezinda. Izan daiguzan gogoan eskariok egiterakoan:

—Eleiza amaren alde: leku guztietan zabaldu daian Jainko poztasuna, batez ere etsita dagozanen artean, *egin daigun otoitz*.

—Izurrite honek jota, gaisorik aurkitzen diranen alde: esker oneko agertu daitezan euren zaintzaileekaz, *egin daigun otoitz*.

—Gaisoen zaintzan, euren osasuna ere arriskuan jarten dabenek, somatu daien Jainkoa ondo-ondoan, adore eta poz-emoile lez, *egin daigun otoitz*.

—Eleiz alkarte honen alde: gero eta urriagoak eta gitxiago dirala ikusteak ez daizan tristetu, egoera bardinean dagozanekaz bat egin baino, sinisten dabenaren lekuko, *egin daigun otoitz*.

† Biztu gugan esker ona, Jauna, pozten gaituan erregalu lez hartu daigun bizitzak dakarskun guztia. Jesu Kristo…

**Jaunartzerako**

**Zatoz, Jauna, zatoz lurrera**
**zure herri hau salbatzera.**

1 *Bakea ta justizia bialdu mundura, Jauna;*
*zure jaiotzak gugana bekar poza, zoriona.*

2 *Okerretatik zuzendu, gaitz bideetatik aldendu,*
*gure kateak apurtu (urratu), bide ilunak argitu.*

3 *Gorroto-bideetatik aldendu gagizuz, Jauna;*
*alkar parkatu dagigun emoiguzu maitasuna.*

## Amaieran

Aldi ilunen aurrean aurpegi alaia ipini behar dala esaten da. Badaukagu arrazoirik Jainkoagandiko errekadua hartu dogunok poz-emoile izateko, ha geugaz dago-eta. Bateatzaileak lez, autortu daigun Jainkoa dogula poz-iturri.